1899

## EUSKAL-ITZ JOSTALDIEN BATZARREA

**(Euskal-festen XVIII garren urtea)**

# AMA ETA SEMECHOA

Ogei ta bost pezetako aldeera eta bitezarra Zumarraga-n irabazitako moldaera

¡Nere aingeru zoragarriya!
¡nere maitecho laztana!
par-irri oyek egiñ zazkitzu
zoratu dediyen ama
zori onian sortu zinduben
Jaungoiko onak nigana,
alaitutzera nere barrena.
len penatua zegoana;
otoitz erregu denak ordaintzat
eskeintzen ditut Argana,
¡Nere biyotzen erditik dira
ontzat artu bitza Jauna!

—

Zu zera lore guziyen lore
ederragorik eztana,
zeruko izar urrezko printzaz
orniturikan zaudena,
zu zera argi dizdizariya
berdiñikan eztubena;
zu zera nere atsegingarri
ontasunen eskumena (1)
nik zuregatik egingo nuke
esan eziñ litekena,
zuregatikan emango nuke
nere odol tanto dena;
zu zera nere poz emalia
magalian zaukatana,
¡esan zaidazu nere Josecho
esan nai zendukeana,
ni naiz amacho, zure itz ona
entzuteko zai nagoena!
¿Ez aldirazu antzik ematen
aingerurik ederrena,
zerala nere errayetako
puskarikan maitiena?
¿Ez aldakizu zuri begira
eziñ aspertuz dagoena
dala zuretzat mundu ontako
senda belarrik onena?
¿Ez dezu igartzen ezti guriya
bularrikan gozuena
dala nik zuri amoriyoaz
gaur ematen dizutana?
¿Ez dezu igartzen barrenen poza
jostatzen dabilkitana
zuretzat dala, ala berian
arnas-ere daukatana?
Irri parcho bat len bezelaše
egiñ zazu amagana,
inozentziko begiratua
egiñik, ¡nere ochana!
masall pocholo, marrubiaren
antzeko koloreduna,
eziñ esan dan ain baitekua
guriya eta leguna,
zu zera nere laztangarriya
argi bide ta laguna;
zu maitatutzez asper eziñik
igarotzen det eguna,
zu zera nere alengrantziya
zu pozez jartzen nazuna
zu zera nere penak kentzalle
zu nere gozotasuna,
zu zera bizi luzagarriya
zu bai maitecho kuthuna,
zu zera biyotz piztugarriya
tristura kentzen dezuna,
¡dontsu neria! zu zera emengo
nere aberastasuna,
zu zera, nere amoriyua
indartutzen dirazuna,
zu zera nere gozakariya
zu bai nere osasuna,
itz batian, zu zera gošoro
zoraturik naukazuna.
¿Zer, parrez zaude? ¡ori ederki!
esan zazu bildoch ona,
zure abotik aspaldi ontan
entzuteko zai nagona,
ea Josecho, esan aguro
miñgaiñ punthan daukazuna
nere biyotzan sartu dediyen
betiko zorotasuna,
kopetachoan musu gozo bat
ematen dizut,. tori... *ma..a*
eta aurchoak euskal izkeran
diyo lenbiziko.. *Am--a*

. . . . . . . . . . . . . . . . .
. . . . . . . . . . . . . . . . .
. . . . . . . . . . . . . . . . .

¡Zer da Josecho, esan, zer dezu!
¿zerk zaitu orla tristetzen?
len bezelako alaitasunaz
ez dirazu begiratzen,
zure begiyan lanbrotasuna
bezela zaizu azaltzen,
izerdi otza kopetachora
ari zaizu ateratzen,
mami guriyak badirudite
asi dirala maškaltzen,
¡A! Jesus ona, nere aurrari
zerbait char zayo gertatzen.

—

¿Zer dezu bada zoragarriya
nondikan dezu sentitzen?
¡ez nazazula naigabiakiñ
jarri barrena zulatzen!
¿Non dezu *pu-pu* izar neria
esan zaidazu orainchen,
¿ez dezu ikusten zure amacho
nola daguan emenchen?
¡ez negar egiñ orrela bada
alaitu berialašen
titi gozoa emango dizut
aingeru ona zurišen!
¿Ez aldirazu antzik ematen
nolatan nagon sufritzen,
len bezelako far-irriarik
ez detalako entzuten?
¿ez dezu ikusten biyotza penaz
beterik zaitala jartzen,
ta naigabiak gero ta índar
geyago dubela artzen?
¿nolatan zaizu zuri arnasa
len bañan geigo estutzen?
¿zerengatikan etzera bada
len len bezela poztutzen?
¿zerk malko miñak begiyetatik
dizkitzu išuri-azten?
¿zergatik bular gozo ederra
nai ezikan dezu uzten?
¡Arantzazuko ama maitea
zuri dizut erregutzen,
biyotz biyotzez zure laguntza
mesedez dizut eskatzen,
ea zerutik zure grazi bat
onera dezun bigaltzen,
nere aingeru kotaru aušen
ote dirazun sendatzen,
¡arren ta arren naigabe denak
oni diyozkatzun kentzen
eta lenago zan bezelako
poztasunera biurtzen.

—

¿Ama, diyozu? ¡ori ederki!
esan berriro orlašen
zure itz gozo paregabia
entzutez ez naiz aspertzen,
—¿Zer, oraiñ farraz alaiturikan
dirazu *ama* esaten?
berriz ta berriz esan Josecho
obeto entzun dezaten;
nere barrendik naigabe denak
asi dirade aldentzen,
eztakit poza geyegirekiñ
nola ez naizen zoratzen,
¡au gozotasun pare gabia
detan barrenan nabaitzen!
biyotz eriya lertu nayian
len zitzaitana arkitzen,
zori onaren indarrarekiñ
asi zait oso lasaitzen.
¿Nolatan ez naiz poztuko, aurra
ikusirikan argitzen
izerdi eta lanbro lengoak
ari bazaizka aldentzen?
¿nolatan ez naiz ni *babatuko*
neronek badet ikusten
nola dabillen sendaturikan
magalachoan jostatzen?
¡*ama titia...ama titia*!
¿pozez dirazu eskatzen?
tori maitia, tori maitia,
aušen nuben desiatzen.

. . . . . . . . . . . . . .

Birjiña ama, otoitz guziyak
zugana ditut eskeiñtzen,
zeruetatik dakizulako
lurrekoari laguntzen.

JOSÉ ARTOLA.

(1) Manojo

V. Iraola-ren moldizkidan.

151822